# Garizumako I. astelehena

## I. Irakurgaia

*Epaitu zuzenbidez zeure herritarra.*

Lebitarrena liburutik

*Lb* 19, 1-2. 11-18

Jaunak honan berba egin eutson Moisesi: «Esan israeldarren alkarte osoari: "Izan zaiteze santu, Ni, Jauna zuen Jainkoa, santua naz-eta.

Ez egin lapurretarik. Ez esan guzurrik. Ez egin iruzurrik zeure herritarrari. Ez egin guzurrezko zinik nire izenean: zeure Jainkoaren izena profanatzea izango litzateke. Neu naz Jauna.

Ez zapaldu lagun hurkoa, ez narrutu. Ez itzi biharamonerako langileari eguneko lansaria emotea. Ez madarikatu gorra, ez jarri oztoporik bidean itsuari; begirune izango deutsazu zeure Jainkoari. Neu naz Jauna.

Ez egin zuzenbakokeriarik epaiketan, ez behekoaren alde jartzeagaitik, ezta handikiari mesede egiteagaitik be: epaitu zuzenbidez zeure herritarra. Ez

ibili herritarren izena lohitzen. Ez egin salaketa faltsurik lagun hurkoa kondenatzeko. Neu naz Jauna.

Ez izan bihotzean gorrotorik zeure senidearentzat; baina zuzendu zeure herritarra, haren pekatuen erantzukizunik izan ez dagizun. Ez egin bengantzarik, ez izan erresuminik zeure herritarrarentzat. Maitatu egizu lagun hurkoa zeure burua lez. Neu naz Jauna"».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 19 [18], 8. 9. 10. 15 (R/. ik. Jn 6, 63c)

R/. **Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira.**

V/. Jaunaren legea bikain, barrua arnasbarritzen dau;
Jaunaren agindua fidagarri, heldubakoa zuhur egiten dau. R/.

V/. Jaunaren arauak zuzen, bihotzaren pozgarri;
Jaunaren agindua distiratsu, begien argigarri. R/.

V/. Jaunaganako begirunea garbi, iraunkor betiko,
Jaunaren erabagiak benetako, dan-danak bidezko. R/.
V/. Hartu egizuz atseginez nire hitz eta gogoetak,
Jauna, ene hatx eta askatzaile. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*2 Ko* 6, 2b

V/. Begira, oraintxe da sasoi egokia,
oraintxe salbazino-eguna.

## EBANJELIOA

*Nire seniderik txikien honeetako bati egin zeuntsoena neuri egin zeunsten.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 25, 31-46

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gizonaren Semea –eta aingeru guztiak beragaz– aintzaz beterik etortzean, bere errege-aulki ospetsuan jesarriko da, eta herri guztiak haren aurrean batuko dabez.

Harek batzuk besteakandik banandu egingo ditu, artzainak ardiak ahuntzengandik banatzen dituan lez: ardiak bere eskumaldean ipiniko ditu, eta ahuntzak ezkerraldean.

Orduan, erregeak esango deutse eskoikoei: “Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok; hartu egizue munduaren sortzetik zuentzat prestaturik dagoan erreinua. Ze gose nintzan, eta jaten emon zeunsten; egarri, eta edaten emon; arrotz, eta etxean hartu ninduzuen; biluzik nengoan, eta jantzi egin ninduzuen; gaixorik, eta bisitatu; espetxean, eta ikustera etorri zinien”.

Orduan, zintzoek erantzungo deutsoe: “Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik, eta emon geuntsun jaten, edota egarri, eta edaten emon? Noiz ikusi zinduguzan arrotz, eta etxean hartu, edota biluzik, eta jantzi? Noiz ikusi zinduguzan gaixorik edota espetxean, eta ikustera joan?”

Eta erregeak erantzungo deutse: “Bene-benetan dinotsuet: nire senide txikien honeetariko bati egin zeuntsoena neuri egin zeunsten”.

Gero, esango deutse ezkerrekoei:

“Alde nigandik, madarikatuok, deabruarentzat eta haren lagunentzat prestatuta dagoan betiko surtara. Ze gose nintzan, eta ez zeunsten jaten emon; egarri, eta ez zeunsten edaten emon; arrotz, eta ez ninduzuen etxean hartu; biluzik, eta ez ninduzuen jantzi; gaixorik eta espetxean nengoan, eta ez zinien ni ikustera etorri”.

Hareek erantzungo deutsoe: “Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik edota egarriz, arrotz edota biluzik, gaixorik edota espetxean, eta guk lagundu ez?”

Harek erantzungo deutse: “Benetan dinotsuet: txikien honeetariko bati egin ez zeuntsoena, neuri ez zeunsten egin”.

Eta honeek betiko zigorretara joango dira; zintzoak, barriz, betiko bizitzara».

Jaunak esana.

# Garizumako I. martitzena

## I. Irakurgaia

*Nire hitzak Neuk nahi dodana egingo dau.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 55, 10-11

Hauxe dino Jaunak:

«Euria eta edurra zerutik jaisten dira
eta ez dira barriro hara bihurtzen
lurra ase, beratu eta emonkor egin barik,
ereiteko hazia eta jateko ogia emon dagizan;
halan egingo dau nire ahotik urtendako hitzak be:
ez da Nigana hutsik bihurtuko,
egingo dau, ostera, Nik nahi dodana
eta beteko Nik ezarritako helburua».
Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 34 [33], 4-5. 6-7. 16-17. 18-19 (R/. ik. 18b)

R/. **Bildur guztietatik libratu ninduan Jaunak.**

V/. Handietsi nigaz batera Jauna,
goratu dagigun alkarregaz haren izena.
Jaunagana jo neban, eta harek erantzun,
bildur guztietatik ninduan libratu. R/.

V/. Begiratzen deutsoenak distiratsu egongo dira,
ez jake aurpegia lotsaz gorrituko.

Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,
eta estualdi guztietatik eban salbatu. R/.

V/. Zintzoengana ditu Jaunak begiak,
adi hareen oihura belarriak.
Gaizkileen aurka Jaunaren aurpegia,
lurretik ezabatzeko hareen gogorapena. R/.

V/. Deadar egiten dabe zintzoek, eta Jaunak entzun,
larrialdi guztietatik libratzen ditu.
Hurrean jake Jauna bihotz-hausiei,
salbatzen ditu barru-jausiak. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Mt* 4, 4b

V/. Gizakia ez da ogiz bakarrik bizi,
Jainkoaren ahotik urteten dauan hitz guztitik baino.

## EBANJELIOA

*Zuek honan egingo dozue otoitz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 6, 7-15

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Otoitz egitean, ez jardun esan eta esan, jentilak bezala, ze uste dabe euren berba-jarioari esker entzungo deutsela Jainkoak. Ez izan hareen antzeko, ze badaki zuen Aitak zer behar dozuen, zuek eske hasi baino lehenago. Beraz, zuek honan egingo dozue otoitz:

“Gure Aita, zeruetan zarana,
Santu izan bedi zure izena;
Etor bedi zure erreinua;
Egin bedi zure nahia
Zeruan bezala lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
Parkatu gure zorrak,
Geuk ere geure zordunei
Parkatzen deutsegun ezkero;
Ez eiguzu itzi tentazinoan jausten
Eta atara gagizuz gatxetik”.

Izan be, zuek besteei euren hutsegiteak parkatzen badeutsezuez, zeuoi be parkatuko deutsue zeruko zuen Aitak; baina besteei parkatzen ez badeutsezue, zeuoi be ez deutsuez parkatuko Aitak zeuen hutsegiteak».

Jaunak esana.

# Garizumako I. eguaztena

## I. Irakurgaia

*Ninivetarrak euren bide okerretik bihurtu.*

Jonasen Profezia liburutik

*Jon* 3, 1-10

Jaunak Jonasi berba egin eta esan eutson: «Ea, zoaz Ninive uri handira, eta iragarri egizu han Nik emoten deutsudan mezua».

Ninivera joan zan Jonas, Jaunak agindu eutson lez. Ninive uri izugarri handia zan; hiru eguneko bidea eukan alderik alde. Sartu zan Jonas urian eta egun bateko bidea egin eban, mezu hau iragarriz: «Berrogei egunen buruan, Ninive hondatua izango da».

Sinistu eutsoen Ninivetarrek Jainkoari eta barau-deia zabaldu eben eta danak, handi eta txiki, dolu-jantziz estaldu ziran. Heldu jakon barria Niniveko erregeari be eta, tronutik jagirik, errege-jantziak erantzi eta dolu-jantziz estaldu zan, eta errautsetan jesarri. Gero, erregearen eta haren ministroen

agindu hau zabaldu eben Niniven: «Jente eta abere, behi eta ardi, ez begi batek be ezer dastatu, ez beitez larratu, ez begie edan. Jenteak eta abereak estaldu beitez dolu-jantziz; dei egin begioe gartsu Jainkoari eta bihurtu beitez danak euren bide okerretik eta indarkeriazko euren egintzetatik. Beharbada, atzera egingo dau Jainkoak be eta damutuko da, harenbaten harantz-honantzko da haren hasarre-sumina, eta ez gara galduko».

Ikusi eban Jainkoak Ninivetarrek egin ebena eta euren bide okerretik bihurtu zirala, eta damutu zan hareei egindako amenazuaz, eta ez eban bete.

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 51 [50], 3-4. 12-13. 18-19 (R/. 19b)

R/. **Zuk ez dozu gitxiesten, ene Jainko, bihotz hausia eta umildua.**

V/. Erruki nitaz, ene Jainko, zeure maitasunaz,
kendu nire hobena zeure neurribako errukiaz.

Garbitu nagizu zeharo neure errutik,
garbitu neure pekatutik. R/.

V/. Ene Jainko, sortu bihotz garbia nigan,
barritu arnasa sendoa nire barruan.
Ez nagizu bota zeure aurretik,
ez kendu niri zeure arnasa santua. R/.

V/. Sakrifizioak ez dozuz atsegin;
erre-oparia eskeiniko baneutsu, ez zeunke onartuko.
Damuz hausiriko espiritua da
Jainkoak nahi dauan sakrifizioa;
Zuk ez dozu gitxiesten, ene Jainko,
bihotz hausia eta umildua. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jl* 2, 12-13

V/. Hauxe dino Jaunak:
Bihurtu zaiteze Nigana bihotz-bihotzez,
bihozbera eta errukitsua naz-eta.

## EBANJELIOA

*Gizaldi honi ez jako ezaugarririk emongo,*
*Jonas profetarena besterik*.

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 11, 29-32

Aldi haretan, jente asko batzen joakola, Jesus honan hasi jaken: «Gizaldi hau gaiztoa da. Ezaugarri eske dabil, baina ez jako ezaugarririk emongo Jonas profetarena besterik. Izan be, Ninivetarrentzat Jonas ezaugarri izan zan lez, halantxe izango da Gizonaren Semea gizaldi honentzat.

Auziegunean hegoaldeko erreginak gizaldi honetako jentearen aurka jagi eta kondenatu egingo dau ze, lurraren azken mugetatik etorri zan ha Salomonen jakituriazko berbak entzutera, eta hona hemen Salomon baino gehiago dana.

Auzi-egunean Ninivetarrek be gizaldi honen aurka jagi eta kondenatu egingo dabe ze, hareek bihotz-barritu egin ziran Jonasen predikazinoagaz, eta hona hemen Jonas baino gehiago dana».

Jaunak esana.

## Garizumako I. eguena

### I. Irakurgaia

*Ez dot Zu beste laguntzailerik, Jauna.*

Ester liburutik

*Est* 4, 17n. p-r. aa-bb. gg-hh

Egun hareetan, Ester erreginak, arrisku gorrian egoala, Jaunagana jo eban. Eta bere zerbitzariekin batera ahuspezturik, otoitz egin eutson goizetik gauera Jaunari, Israelen Jainkoari, esanez: «Bedeinkatua Zu, Jauna, Abrahamen Jainkoa, Isaaken Jainkoa eta Jakoben Jainkoa! Lagundu egidazu, bakarrik nagoalako eta ez dot Zu beste laguntzailerik. Nire bizia arriskuan dago.

Txikitatik entzun izan dot gurasoen etxean, Zuk, Jauna, guztiz askatu dozuzala atsegin jatzuzan guztiak. Orain, beraz, lagundu egidazu, bakarrik nagoalako eta ez dot Zu beste laguntzailerik, Jauna, ene Jainkoa. Zatorkidaz lagun, umezurtz nago-eta; ezarri egizuz nire ahoan berba egokiak lehoiaren aurrean egongo nazanean. Egin nagizu atsegingarri haren aurrean; aldatu egizu haren bihotza, gure arerioa gorrotatu dagian, hau eta honen aldekoak desegin dagizan. Gu, barriz, askatu gagizuz geure arerioen eskuetatik; gure negarra bihurtu egizu poz, eta gure minak osasun».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 138 [137], 1-2a. 2b-3. 7c-8 (R/. 3a)

R/. **Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan, Jauna.**

V/. Eskerrak emoten deutsudaz, Jauna, bihotz-bihotzez,
nire hitzak entzun dozuzalako;
kantuz goratzen zaitut aingeruen aurrean,
eta zure tenplu santurantz begira ahuspezten naz. R/.

V/. Eskerrak emoten deutsadaz zure izenari,
zure maitasun eta leialtasunagaitik,
parebakoak egin dozuz-eta
zeure izena eta promesa.
Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan,
kemena bizkortu bihotzean. R/.

V/. Eskua luzatu eta salbatzen nozu,
dana egingo dau Jaunak nire alde.
Jauna, zure maitasuna betikoa,

ez itzi bertan behera zeure eskuen lana!
R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Sal* 51 [50], 12a. 14a

V/. Ene Jainko, sortu bihotz garbia nigan,
poztu nagizu barriro zeure salbazinoaz.

## EBANJELIOA

*Eskatzen dauanak hartu egiten dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 7, 7-12

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Eskatu, eta emongo deutsue Jainkoak; bilatu, eta aurkituko dozue; jo atea, eta zabalduko deutsue; ze, eskatzen dauanak hartu egiten dau, bilatzen dauanak aurkitzen, eta atea jotzen dauanari zabaldu egiten jako.

Zuetariko nonork, semeak ogia eskatuta, harria emongo ete deutso? Edota arraina eskatuta, sugea emongo ete deutso? Halandaze, zuek, txarrak izanda be, zeuen seme-alabei gauza onak emoten badakizue, zenbat gehiago ez deutsez zeruko zuen Aitak gauza

onak emongo eskatzen deutsoenei!

Honan bada, besteek zeuei egitea gura zeunkien guztia egin zeuok be besteei; horixe da Moisesen legeak eta profetek dinoena».

Jaunak esana.

# Garizumako I. barikua

## I. IRAKURGAIA

*Gaiztoaren heriotza nahi ete dot Nik,*
*eta ez jokabidez aldatu eta bizitzea?*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 18, 21-28

Honan berba egiten dau Jainko Jaunak: «Gaiztoa, egindako pekatu guztietatik aldentzen bada, nire agindu guztiak gordetzen baditu eta zuzenbidez eta justiziaz jokatzen, biziko da, bai, eta ez da hilko. Ez dira gogoan hartuko harek egin dituan gaiztakeriak; bere egintza zuzenakaitik biziko da.

Hau dinot nik, Jainko Jaunak: Gaiztoaren heriotza nahi ete dot, bada, Nik, eta ez jokabidez aldatu eta bizitzea?

Zintzoa, barriz, bere zuzentasunetik

aldendu eta txarkeria egiten badau, gaiztoak egiten dituan gauza higuingarriak eginez, bizi egingo ete da? Ez dira gogoan hartuko haren egintza zuzenak; egin dauan desleialkeria eta pekatuagaitik, hil egingo da.

Zuek dinozue: "Ez da bidezkoa Jaunaren jokabidea". Entzun, bada, israeldarrok: Nire jokabidea bidezkoa ez dala? Ez ete da zeuena bidezkoa ez dana?

Zintzoa, bere zuzentasunetik aldendu, txarkeria egin eta hiltzen bada, egin dauan txarkeriagaitik hiltzen da. Eta gaiztoak, egin dauan gaiztakeriatik aldendu eta zuzenbidez eta justiziaz jokatzen badau, bizirik iraungo dau. Egindako txarkeriez ohartu eta euretatik aldentzen bada, biziko da, bai, eta ez da hilko».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 130 [129], 1-2. 3-4. 5-6b. 6c-8 (R/. 3)

R/. **Gure erruak gogoan badaukazuz, Jauna,**

**nor dagoke zutunik, Jauna?**

V/. Barru-barrutik dei egiten deutsut, Jauna;
entzun, Jauna, nire deadarra!
Begoz erne zure belarriak
nire erregu-oihura. R/.

V/. Erruak kontuan badozuz, Jauna,
nork iraun zutunik, ene Jauna?
Baina Zuri parkamena dagokizu,
Zuganako begirunean bizi gaitezan. R/.

V/. Jaunaren zain nago, zain dago nire barrua,
haren hitza dot itxaroten;
nire barrua Jaunaren gogo biziz dago,
gauzaina egunsentiaren gogo biziz baino gehiago. R/.

V/. Gauzainak egunsentia lez,
itxaron begi Israelek Jaunagan,
Jaunarena da-eta maitasuna,
harena askapen betea.
Harek askatuko dau Israel
bere erru guztietatik. R/.

Ebanjelio aurreko txatala

*Ez* 18, 31

V/. Kendu zeuengandik
egindako gaiztakeria guztiak, dino Jaunak,
eta barritu egizuez zeuen gogo-bihotzak.

## EBANJELIOA

*Zoaz lehenengo senideagaz bakeak egitera.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 20-26

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Jainkoaren nahia lege-maisuek eta fariseuek baino hobeto betetzen ez badozue, ez zarie sartuko zeruetako erreinuan.

Entzunda daukazue antxinakoei agindua: “Ez hil inor”, eta norbait hiltzen dauana errudun izango da auzitegian. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Bere senideagaz hasarretzen dana errudun izango da auzitegian; senideari “zoroa” esaten deutsana errudun izango da batzar nagusian, eta “sinistebako” esaten deutsana infernuko surtarako errudun izango da.

Halandaze, zeure oparia altarean eskaintzean, gogoratzen bajatzu zure senideak badauala zer edo zer zure aurka, itzi oparia han bertan, altara aurrean, eta zoaz lehenengo senideagaz bakeak egitera; etorri orduan eta eskeini zeure oparia.

Konpondu zaitez lehenbailehen zeure arerioagaz, berarekin auzitegira zoazen bitartean, arerioak epailearen esku jarri ez zagizan, eta epaileak ertzainaren esku, eta giltzapean sartu ez zagiezan. Benetan dinotsut: Ez dozu handik urtengo, harik eta azken txanpona ordaindu arte».

Jaunak esana.

## Garizumako I. zapatua

### I. Irakurgaia

*Jaunari zeure Jainkoari sagaraturiko herri izango zara.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 26, 16-19

Moisesek honan berba egin eutson herriari: «Lege eta erabagi honeek betetzeko agintzen deutsu gaur Jaunak,

zeure Jainkoak; gorde eta bete egizuz bihotz-bihotzez eta gogo osoz.

Onartu egin dozu gaur Jaunak agindu deutsuna, hau da, bera izango dozula zeure Jainkoa, bere bideetan ibiliko zarala, bere lege, agindu eta erabagiak beteko dozuzala eta bere ahotsa entzungo.

Eta Jaunak be onartu egin dau gaur zuk agindua, hau da, bere herri izango zarala, bere jaubetza apartekoa, berak agindu eutsun lez, eta bere agindu guztiak beteko dozuzala. Eta harek berak egindako herri guztiei baino aintza, ospe eta ohore handiagoa emongo deutsula, eta Jaunari zeure Jainkoari sagaratutako herri izango zarala, berak agindu eutsun lez».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 119 [118], 1-2. 4-5. 7-8 (R/. 1b)

R/. **Zorionekoak Jaunaren lege-bidean dabiltzanak.**

V/. Zorionekoak jokabide akats bakoa

dabenak,
Jaunaren lege-bidean dabiltzanak.
Zorionekoak, haren aginduak betez,
haren bila bihotz-bihotzez dabiltzanak.
R/.

V/. Jauna, legeak ezarri dozuz,
arretaz gorde dagiguzan.
Izan beitez sendo nire bideak,
zure arauak betetzeko. R/.

V/. Bihotz zintzoz goratuko zaitut,
zure erabagi zuzenak ikastean.
Zure arauak nahi ditut bete,
ez nagizu guztiz eskutik itzi. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*2 Ko* 6, 2b

V/. Begira, oraintxe da sasoi egokia,
oraintxe salbazino-eguna.

## EBANJELIOA

*Izan zaiteze guztiz onak,*
*zeruetako zuen Aita guztiz ona dan lez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 43-48

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun dozue antxinakoei agindua: “Maitatu egizu zeure lagun hurkoa eta gorrotatu zeure arerioa”. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Maitatu egizuez zeuen arerioak eta egin otoitz eraso egiten deutsueenen alde, zeruetan dagoan zeuen Aitaren seme-alaba izan zaitezen ze, harek gaiztoentzat eta zintzoentzat ataratzen dau eguzkia eta zuzenentzat eta okerrentzat egiten euria.

Izan be, maite zaituenak bakarrik maite badituzue, zer sari zor jatzue? Zergalariek be ez ete dabe beste horrenbeste egiten? Eta zeuon senideak bakarrik agurtzen badituzue, zer egiten dozue berezirik? Jentilek be ez ete dabe beste horrenbeste egiten? Izan zaiteze, beraz, guztiz onak, zeruko zuen Aita guztiz ona dan lez».

Jaunak esana.